# Urtean Zeharreko XIII. astelehena
## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Errubakoa be galdu egin behar ete dozu errudunagaz batera?*

Hasiera liburutik

*Has* 18, 16-33

Abrahamengana Mambreko artadira etorritako gizasemeak zutundu eta Sodomarantz abiatu ziran. Abrahamek lagundu egin eutsen, agurtu aurretik. Jaunak honan inoan bere kautan: «Egingo dodanaren barri emon barik itzi behar ete dot Abraham? Izan be, herri handi eta indartsu bihurtuko da eta lurreko herri guztiak honen bitartez bedeinkatuko ditut; hori aukeratu dot, bere seme-alaba eta bere etxeko guztiei Jaunaren arabera bizitzen irakasteko, on eta zuzen dana eginez; eta holan Jaunak bete egingo dau Abrahami agindutako guztia».

Beraz, Jaunak esan eban: «Izugarria da Sodomaren eta Gomorraren kontrako salakuntza, eta larriegia uri horreen pekatua. Salakuntza hori egia ala guzurra dan ikusi behar dot».

Gizasemeek handik urten eta

Sodomarantz jo eben; Abraham, barriz, Jaunaren aurrean zutunik gelditu zan. Hurreraturik, esan eutson Abrahamek: «Egiaz, errubakoa be galdu egin behar ete dozu errudunagaz batera? Beharbada, badira berrogeta hamar errubako urian. Horreek be galdu egin behar ete dozuz? Ez ete deutsazu parkatuko uriari berrogeta hamar errubako horreekaitik? Alde zugandik holakorik egitea, errubakoa errudunagaz batera hilarazotea! Zelan jokatuko dozu, bada, bardin batagaz zein besteagaz? Zuk ez holakorik! Munduaren epaileak ez ete dau zuzenbiderik egingo?»

Jaunak erantzun eutson: «Sodomako uri barruan berrogeta hamar errubako aurkitzen baditut, uri osoari parkatuko deutsat hareekaitik».

Eta Abrahamek barriro: «Ausardia da benetan hauts eta errauts nazan honek neure Jaunari hitz egitea. Jazo daiteke berrogeta hamarrera heltzeko bost falta izatea; uri osoa hondatuko ete dozu bost horreekaitik?» «Ez –erantzun eutson Jaunak–, ez dot hondatuko, urian berrogeta bost aurkitzen baditut».

Oraindino be Abrahamek: «Jazo daiteke berrogei besterik ez izatea». Jaunak erantzun: «Ba, ez dot hondatuko berrogei horreekaitik».

Orduan, Abrahamek esan eutson: «Ez zaitez hasarratu, ene Jauna, berbetan jarraitzen badot. Jazo daiteke hogeta hamar besterik ez izatea». «Ez dot hondatuko, hogeta hamar aurkitzen baditut», erantzun eutson Jaunak. Abrahamek barriro: «Badakit ausartegia nazala; baina jazo daiteke hogei besterik ez izatea». Jaunak erantzun: «Ez dot hondatuko hogei horreengaitik». Eta Abrahamek: «Ez hasarratu, Jauna, beste behin zuzentzen banaiatzu. Jazo daiteke hamar besterik ez izatea». Jaunak erantzun eutson: «Ez dot hondatuko hamar horreekaitik».

Jaunak, Abrahamegaz berbetan amaitu ostean, alde egin eban, eta Abraham bere txabolara bihurtu zan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 103 [102], 1-2. 3-4. 8-9. 10-11 (R/. 8a)

R/. **Bihozbera eta errukiorra da Jauna.**

V/. Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,

nire barru osoak haren izen santua.
Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
ez bedi ahaztu haren mesedeaz. R/.

V/. Erru guztiak deutsuz parkatzen,
gatx guztiak osatzen;
zure bizia hilobitik askatzen dau,
maitasunez eta errukiz koroatzen zaitu. R/.

V/. Bihozbera eta errukiorra da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ez dabil etenbako auzitan,
ez dau hasarrea betiko gordetzen. R/.

V/. Ez gaitu erabiltzen gure pekatuek merezi lez,
ez deusku ordaintzen geure erruen arabera.
Zelan zerua lurraren gainean garai,
halan haren maitasuna begirune deutsoenentzat handi. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jente apala lurreko hautsaren kontra zapaltzen dabe.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 2, 6-10. 13-16

Hau dino Jaunak:
«Israelek gaiztakeriarik asko egin dau,

zein baino zein handiagoa;
beraz, ez deutsat parkatuko;
gizaki zuzena dirutan saltzen dabelako
eta behartsua, oinetako pare baten truke;
jente apala lurreko hautsaren kontra zapaltzen dabe,
errukarriaren eskubidea baztertzen.
Aita-semeak neska beragana doaz, nire izen santua profanatuz.
Behartsuei bahituran hartutako soinekoen gainean etzuten dira,
edozein altara ondotan;
multaz kendutako ardaoa edaten dabe euren jainkoaren etxean.

Nik hondatu neban amortarra hareen aurretik
–zedroa baizen tantai
eta haritza baizen sendo zan amortarra–;
frutuak bota neutsazan gainetik eta sustraiak atara azpitik.
Nik igonazo neutsuen Egiptotik,
eta basamortuan zehar berrogei urtez eroan,
amortarren lurraldeaz jaubetu zeintezen.

Orain, ostera, Neuk zapalduko zaituet,
gari-balaz zamatutako gurdiak lurra zapaltzen dauan lez.
Bizkorrak ezin izango dau ihes egin,
indartsua ezin izango da bere indarraz baliatu,
ausartak ez dau bizirik urtengo;
gezilariak ez dau zutunik iraungo,
oinezkoa ez da libratuko,
zaldizkoak be ez dau bizirik urtengo;
egun haretan, gudarietan ausartenak biluzik egingo dau ihes».

Halan dino Jaunak.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 50 [49], 16b-17. 18-19. 20-21. 22-23 (R/. 22a)

R/. **Entzun ondo, Jainkoaz ahaztuok.**

V/. Zelan aitatu zeinkez nire arauak
eta nire ituna ahotan hartu,
nire zentzabideari gorroto badeutsazu
eta nire berbei atzea emoten? R/.

V/. Lapurra ikustean, haregaz zoaz arineketan,
adulteriogileekin alkartzen zara.
Arin dozu ahoa gaiztakeriarako,

bizkor mihina engainua asmatzeko. R/.
V/. Zeure senidearen aurka txarto esaka zabiltz,
zeure amaren semea baltzitzen dozu.
Zuk horreek egin, eta Ni isildu?
Zu lakoa nazala uste ete dozu?
Salatu egingo zaitut, aurpegira botako dana. R/.
V/. Entzun, beraz, ondo, Jainkoaz ahaztuok;
bestela, hondatu egingo zaituet
eta ez da libratuko zaituenik izango.
Esker onezko oparia eskeintzen deustanak,
horrek emoten deust aintza,
onbideratzen danari
erakutsiko deutsat neure salbazinoa. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Sal* 95 [94], 8a. 7d

R/. **Aleluia.**
V/. Gaur, ez gogortu bihotza;
entzun Jaunaren ahotsa. R/.

## EBANJELIOA

*Zuk jarraitu Niri.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 8, 18-22

Aldi haretan, Jesusek, bere inguruan jentetza handia ikusirik, beste itsasertzera igarotzeko agindu eban. Orduan, lege-maisu bat hurreratu jakon, esanez: «Maisu, edonora jarraituko deutsut». Jesusek erantzun eutson: «Azeriek baditue zuloak eta zeruko hegaztiek habiak; Gizonaren Semeak, ostera, ez dauka burua non ezarririk».

Beste batek, ikasleetarikoa zanak, esan eutson: «Jauna, itzidazu lehenengo neure aitari lur emotera joaten». Jesusek erantzun eutson: «Zuk jarraitu Niri, eta itzi hildakoei euren hildakoei lur emoten».

Jaunak esana.

___________________________________2

# Urtean Zeharreko XIII. martitzena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Jaunak sufrezko eta suzko euri-zaparrada bota eban Sodoma eta Gomorra gainera.*

Hasiera liburutik

*Has* 19, 15-29

Egun hareetan, aingeruek presa emoten eutsoen Loti, esanez: «Jagi

zaitez, hartu zeure emaztea eta hemen diran zeure alaba biak, uriari ezarritako zigorrean galdu ez zaitezen». Baina Lot nagi ebilela ikusirik, indarrez atara ebezan bera, emaztea eta alaba biak, eta uritik kanpora itzi ebezan, erruki izan ebazan-eta Jaunak. Kanpora atara ebezanean, hareetako batek esan eutson: «Salbatu egizu zeure bizia! Ez begiratu atzera, ez gelditu ibar honetan; egin ihes mendira, galdu ez zaitezan!»

Lotek, ostera, erantzun eban: «Ez, arren, ene Jauna! Begira, zeure morroi hau begiko izan dozu eta erruki handia agertu deustazu, nire bizia salbatuz. Baina ez dot salbabiderik mendian, hondamendiak harrapatu eta hilko ninduke-eta. Ikusi herri txiki ha; hurrean dago, bertan babesteko; itzi egidazu herri txiki horretara ihes egiten eta bizirik urtengo dot».

Harek erantzun: «Ea, onartzen deutsut eskabide hori be; ez dot hondatuko esan dozun herria. Zoaz bizkor eta babestu han, ezin neike-eta ezer egin, zu hara heldu arte». Horregaitik, herri hari «Tzoar» –hau da,

«Txiki»– deritxo. Eguzkia urteten egoan, Lot Tzoarrera heldu zanean.

Orduan, Jaunak sufrezko eta suzko euri-zaparrada bota eban zerutik Sodoman eta Gomorran. Jaunak erraustu egin ebazan uriak eta hareetako bizilagunak, lautada osoa eta lurreko landarak. Loten emazteak atzera begiratu eban eta gatz-harri bihurtu zan.

Abraham, goizean goiz jagirik, Jaunagaz egondako tokira joan zan; Sodoma, Gomorra eta ibarraldeko lautada osora begiraturik, kea ikusi eban, labe batetik lez lurretik igoten. Honan, ibarreko uriak erraustu ebazanean, Jainkoak gogoan izan eban Abraham eta onik atara eban Lot, bizi zaneko urien hondamenetik.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 26 [25], 2-3. 9-10. 11-12 (R/. 3a)

R/. **Begien aurrean dot, Jauna, zure maitasuna.**

V/. Aztertu nagizu, Jauna, ikertu nagizu,
arakatu sutan nire bihotza, nire barrua.
Begien aurrean dot zure maitasuna,

eta zugazko leialtasunez jokatu dot. R/.
V/. Ez eroan ni pekatariekin batera,
ezta nire bizia be hiltzaileekin batera,
beteak dabez-eta esku biak
maltzurkeriaz eta azpidiruz. R/.
V/. Nik, barriz, zintzo jokatu dot;
askatu nagizu, erruki zakidaz!
Sendo ditut oinak zuzentasun-bidean,
bedeinkatuko dot Jauna batzarrean. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jaunak hitz egitean, nork ez zabaldu haren mezua?*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 3, 1-8; 4, 11-12

Entzun, Israelgo seme-alabok. Hona Jaunak zuen kontra, Egiptotik atara eban familia horren guztiaren kontra, adierazoten dauan mezua:

«Zuek bakarrik aukeratu zaituet,
lurreko familia guztien artetik;
horregaitik, zeuen pekatu guztien kontua eskatuko deutsuet».

Gizon bi alkarregaz joango ete dira,
lehenengo ados jarri ez badira?
Lehoiak oihanean orrorik egiten ete

dau, harrapakinik ez badau?
Lehoikumeak gordelekutik marruma egiten ete dau,
ezer harrapatu ez badau?
Txoririk jausten ete da lurrera, lakiorik jarri ez badeutsoe?
Askatzen ete da lakioa lurretik, ezer harrapatu ez badau?
Jo daiteke urian turuta, jentea ikaratu barik?
Jazo daiteke urian zorigatxa, Jaunak eragin barik?
Ez, Jainko Jaunak ez dau ezer egiten
bere zerbitzari profetei bere asmoa agertu barik.
Lehoiak orro egitean, nor ez bildurtu?
Jaunak berba egitean, nork ez haren mezua zabaldu?

«Irauli egin zaituet,
Sodoma eta Gomorra irauli nituan lez;
sutatik ataratako ilintiaren antzera libratu zarie.
Halan be, ez zarie Nigana bihurtu,
halan dino Jaunak.
Horregaitik, zeu zigortzera nator, Israel.
Eta zigortuko zaitudan ezkero,

prestatu zaitez, Israel, zeure Jainkoaren aurrean agertzeko».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 5, 5-6a. 6b-7. 8 (R/. 9a)

R/. **Gidatu nagizu, Jauna, zeure zuzentasunaren bidetik.**

V/. Ez zara Zu gaiztakeria gogoko dauan Jainkoa,
ez deutsazu Zuk gaiztoari harrerarik egiten,
harroek ezin iraun dabe zure begien aurrean. R/.

V/. Gaizkile guztiak dozuz gorrotatzen,
guzur-ontziak hondatzen.
Hiltzaile eta maltzurrak
higuingarri jatzuz, Jauna. R/.

V/. Ni, barriz, zure maitasun handiari esker,
sartuko naz zure etxean,
zure tenplu santura begira ahuspeztuko,
begirunez beterik. R/.

## I. eta II. urteetan

## Aleluia

*Sal* 130 [129], 5

R/. **Aleluia.**
V/. Jaunaren zain nago,
haren hitza dot itxaroten. R/.

## EBANJELIOA

*Zutundurik, hasarre egin eutsen haizeari eta itsasoari, eta barealdi handia egin zan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 8, 23-27

Aldi haretan, Jesusek txalupara igon eban eta ikasleek jarraitu egin eutsoen.

Bat-batean, ekatx handia sortu zan itsasoan, eta olatuek txalupa estaldu egiten eben. Jesus, barriz, lo egoan. Ikasleek hurreratu eta itzartu egin eben, esanez: «Salbatu gagizuz, Jauna! Galtzera goaz!»

Harek esan eutsen: «Zergaitik zarie hain bildur, siniste gitxikook?» Eta, zutundurik, hasarre egin eutsen haizeari eta itsasoari, eta barealdi handia egin zan.

Ikasleek, harriturik, hauxe inoen: «Nor ete dogu berau, haizeak eta itsasoak be berak esana egiten dabeeta?»

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XIII. eguaztena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Neskamearen semeak ez dau oinordeko izan behar nire seme Isaakegaz*

Hasiera liburutik

*Has* 21, 5. 8-20

Abrahamek ehun urte ebazan bere seme Isaak jaio jakonean. Hazi zan umea eta kendu eutsoen bularra, eta Abrahamek jatordu bikaina antolatu eban Isaaki bularra kendu eutsoen egunean.

Ohartu zan Sara, Agar egiptoarrak Abrahami emon eutson semea bere seme Isaakegaz ebilela jolasten, eta esan eutson Abrahami: «Bota egizuz etxetik neskamea eta haren semea, neskamearen semeak ez dau-eta oinordeko izan behar nire seme Isaakegaz». Biziro atsekabetu zan Abraham, Ismael be bere seme eban-eta.

Baina Jainkoak esan eutson: «Ez zaitez atsekabetu mutikoagaitik eta zeure neskameagaitik. Egiozu jaramon

Sarak esaten deutsun guztiari, Isaaken bidez izango dozuz-eta ondorengoak. Baina neskamearen semeagandik be herri handia sortuazoko dot, hori be zure seme dalako».

Abrahamek, goizean goiz jagi, ogia eta zaragi bat ur hartu eta Agarri ezarri eutsozan lepoan. Halan, mutikoagaz batera, bialdu egin eban. Abiatu zan, bada, Agar, eta Beer-Xeba basamortuan noraezean ibili zan. Zaragiko ura amaitu zanean, sastraka baten azpian itzi eban mutikoa; bera, barriz, urrundurik, aurrez aurre jesarri zan, ehunen bat metrora edo. Hau inoan bere kautan: «Ez dot mutikoa hiltzen ikusi nahi». Han jesarrita egoala, mutikoa negarrez hasi zan oihuka.

Entzun eban Jainkoak mutikoaren oihua, eta Jainkoaren aingeruak dei egin eutson zerutik Agarri, esanez: «Zer dozu, Agar? Ez bildurrik izan, entzun dau-eta Jainkoak hor dozun mutikoaren oihua. Ea, hartu egizu mutikoa eta ez itzi eskutik; herri handi bihurtuko dot».

Orduan, Jainkoak begiak zabaldu eutsozan Agarri, eta ur-putzu bat ikusi eban; joan zan, zaragia urez bete eta

edaten emon eutson mutikoari. Jainkoa lagun izan eban mutikoak; hazi zan, basamortuan bizi eta gezilari trebe bihurtu zan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 34 [33], 7-8. 10-11. 12-13 (R/. 7a)

R/. Dohakabeak oihu egin eban, eta Jaunak entzun.

V/. Dohakabeak dei egin eban, eta Jaunak entzun,
eta estualdi guztietatik eban salbatu.
Kanpaturik dago Jaunaren aingerua
hari begirune deutsoenen inguruan,
eta libratzen ditu. R/.

V/. Izan Jaunari begirune zuek, hari sagaratuok,
ez jake-eta ezer falta begirune deutsoenei.
Aberatsek ezagutzen dabe beharrizana eta gosea;
Jaunagana jotzen dabenei ez jake onik falta. R/.

V/. Zatoze, seme-alabok, eta entzun;
Jaunari begirune izaten irakatsiko deutsuet.

Nork ez dau bizia maite?
Nork ez dau luzaro bizi nahi, zoriontsu izateko? R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Kendu nire aurretik zeuen kantuen zarata-hotsa;*
*datorrela justizia, agortzen ez dan erreka lez.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 5, 14-15. 21-24

Bilatu egizue ona eta ez txarra, bizi zaitezen;
holan, zuekin izango da Jauna, Jainko ahalguztiduna,
zeuek dinozuen lez.
Gorrotatu egizue txarra, maitatu ona,
ezarri zuzenbidea auzitegian;
ea Jauna Jainko ahalguztiduna
Joseren azken ondorengoez errukitzen dan.

Hau dino Jaunak:

«Gorroto eta higuin ditut zuen jaiak,
ez ditut atsegin zuen ospakizunak.
Erre-opariak eskeintzen deustazuez;
baina Nik ez ditut onartzen zuen eskeintzak,

zuen zekor gizenen opariei atzea emoten deutset.
Kendu nire aurretik zeuen kantuen zarata-hotsa,
ez dot zuen zitara-soinurik entzun nahi.
Datorrela, bai, zuzenbidea ura lez,
datorrela justizia, agortzen ez dan erreka lez».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 50 [49], 7. 8-9. 10-11. 12-13. 16b-17 (R/. ik. 23b)

R/. **Zuzen dabilenari deutsat Jainkoaren salbamena erakusten.**

V/. Entzun, Israel, ene herri,
zure aurka egingo dodan autorpena.
Neu naz Jainkoa, zure Jainkoa! R/.

V/. Ez zaitut salatzen zeure sakrifizioakaitik;
zure erre-opariak aurrean ditut beti.
Baina ez dot hartuko zure kortako zekorrik,
ez zure eskortako akerrik. R/.

V/. Neureak ditut-eta basoetako piztia guztiak,
mendietako milaka animaliak;
ezagunak ditut mendiko hegazti guztiak,

neureak ditut landan bizi diran guztiak. R/.

V/. Gose banintz, ez neuskizu zuri esango,
neurea dot-eta mundua eta bertako guztia.
Zezenen okela jaten ete dot, bada,
edota akerren odola edaten? R/.

V/. Zelan aitatu zeinkez nire arauak
eta nire ituna ahotan hartu,
nire zentzabideari gorroto badeutsazu
eta nire hitzei atzea emoten? R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*St* 1, 18

R/. **Aleluia.**

V/. Aitak, halan nahita, bizia emon deusku egiaren mezuaz,
sorkari guztien artean lehenengoak izan gaitezan. R/.

**EBANJELIOA**

*Sasoia baino lehen guri oinaze emotera etorri zara ala?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 8, 28-34

Aldi haretan, Jesus beste itsasertzera, gerasatarren lurraldera, heldu zanean,

deabrudun bik urten eutsoen bidera, hilobi artetik urtenda. Hain gaiztoak ziranez, ez zan inor ausartzen bide haretatik ibiltzen. Deadarka esan eutsoen: «Zer dozu gurekin, Jainkoaren Seme horrek? Sasoia baino lehen guri oinaze-minak emotera etorri ete zara?»

Handik urrunera barik, txarri-aldra handi bat ebilen musturka, eta deabruek eskatu eutsoen Jesusi: «Botatzekotan, bialdu gagizuz txarri-aldrara». Jesusek esan eutsen: «Zoaze!» Hareek urten eta txarrietan sartu ziran, eta txarri-aldra osoak maldan behera bota eban burua itsasora eta uretan ito.

Txarrizainek ihes egin eben eta, urira joanda, dana kontatu eben, baita deabrudunei gertatua be. Orduan, herri osoak urten eban Jesusengana eta, ikusi ebenean, euren lur-mugetatik alde egiteko eskatu eutsoen.

Jaunak esana.

________________________________________4

# Urtean Zeharreko XIII. eguena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Sinismenean gure aita dogun Abrahamen oparia.*

Hasiera liburutik

*Has* 22, 1-19

Egun hareetan, Jainkoak Abraham aztertu nahi izan eban eta dei egin eutson: «Abraham!» Eta Abrahamek erantzun: «Hemen nozu». Eta Jainkoak: «Hartu egizu Isaak zeure semea, hain maite dozun seme bakarra, eta zoaz Moriako lurraldera, eta eskeini egidazu erre-opari, Nik erakutsiko deutsudan mendi gainean».

Jagi zan Abraham goizean goiz, txalmatu eban astoa eta, erre-oparitako egurra txikiturik, Jainkoak esandako lekura joan zan, morroi bigaz eta bere seme Isaakegaz. Hirugarren egunean, begiak jasorik, lekua ikusi eban urrunera, eta esan eutsen morroiei: «Gelditu hemen astoagaz. Mutikoa eta biok haraino goaz, Jainkoa gurtzera. Ondoren, hona bihurtuko gara».

Hartu eban Abrahamek erre-oparitako egurra eta Isaak bere semeari leporatu eutson; berak sua eta aiztoa eroiazan. Biak batera joiazala, Isaakek esan eutson bere aita Abrahami: «Aita!» «Zer dozu, seme?», erantzun eutson harek. Eta semeak: «Sua eta egurra

badoguz; baina non da oparitako bildotsa?» Abrahamek erantzun eutson: «Jainkoak eratuko deusku oparitako bildotsa, seme». Eta biak batera joiazan.

Jainkoak esandako lekura heldu ziranean, Abrahamek altarea eraiki eban eta egurra prestatu; gero, bere seme Isaak lotu eta altaran egur-pilo gainean ipini eban. Eskua luzatuz, aiztoa hartu eban Abrahamek semea hiltzeko. Baina Jainkoaren aingeruak dei egin eutson zerutik: «Abraham, Abraham!» Eta Abrahamek erantzun: «Hemen nozu». Aingeruak, orduan: «Ez luzatu eskua semearen gainera, ez egin ezer. Ikusi dot Jainkoari begirune deutsazula, ez deutsazu-eta zeure seme bakarra bera be ukatu».

Abrahamek begiak jaso eta ahari bat ikusi eban adarretatik sastraka artean kateatuta; hartu eta erre-oparitzat eskeini eban semearen ordez. Abrahamek leku hari «Jaunak dau hornitzen» ezarri eutson izena, eta gaur egun be halan dino jenteak: «Mendian Jaunak dau hornitzen».

Barriro be dei egin eutson Jaunaren

aingeruak zerutik Abrahami, esanez: «Hau dino Jaunak: Ala Ni Jainkoa! Holan jokatu dozulako, zeure seme bakarra ukatu ez deustazulako, bedeinkatuko zaitut eta zure ondorengoak zeruko izarrak eta itsasbazterreko hondarra baizen ugari egingo ditut, eta arerioen uriez jaubetuko dira. Zure ondorengoen bidez lurreko herri guztiak bedeinkatuko ditut, nire esana egin dozulako».

Bihurtu zan Abraham bere morroiakana eta Beer-Xebara joan ziran alkarregaz. Abraham hantxe gelditu zan bizitzen.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 116 [114], 1-2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. 9)

R/. **Ibiliko naz Jaunaren aurrean bizidunen lurraldean.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Maite dot Jauna,
entzun dau-eta nire erregu-oihua,
makurtu dau-eta nigana belarria,
dei egin deutsadan egunean. R/.

V/. Heriotza-lokarriek inguratu ninduen,
Herio-lezako sareak harrapatu;

estu eta larri nintzan.
Baina dei egin neutsan Jaunaren izenari:
«Arren, Jauna, atara nagizu onik». R/.
V/. Errukiorra eta zintzoa da Jauna,
bihozbera gure Jainkoa.
Jaunak zaintzen ditu apalak;
lur jota nengoan, eta salbatu nau. R/.
V/. Bai, libratu deust bizia heriotzatik,
begiak malkotik, oinak jaustetik.
Jaunaren aurrean ibiliko naz
bizidunen lurraldean. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jaunak bialdu ninduan bere herriari profetizatzera.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 7, 10-17

Egun hareetan, Amatziasek, Betelgo abadeak, barri hau bialdu eutson Israelgo errege Jeroboami: «Amos azpilanean dabiltzu hemen, israeldarren artean; herriak ezin dau gehiago jasan haren mezua. Honan dihardu-eta Amosek:

"Jeroboam ezpataz hilko da,
eta Israel herria erbestera eroango

dabe
bere lurraldetik urrun"».

Orduan, Amatziasek esan eutson Amosi: «Ikusle, zoaz, alde hemendik Judako lurraldera. Egin han profetarena eta irabazi zeure ogia. Baina ez jardun gehiago profetagintzan Betelen, hau errege-santutegia dalako eta erreinuko jauretxea».

Amosek erantzun eutson Amatziasi: «Ni ez naz ogibidez profeta, abeltzaina naz eta basapiku-batzailea. Abeltzain nenbilela hartu ninduan Jaunak eta bere herri Israeli profetizatzera bialdu. Orain, bada, entzun Jaunaren hitza. Zuk dinozu ez dagidala iragarri Jaunaren mezua Israelen kontra, ez dagidala berba egin Isaaken ondorengoen kontra. Halan be, hona zer dinoan Jaunak:

"Zure emaztea emagaldu bihurtuko da urian,
zure seme-alabak ezpatapean hilko dira;
zure lurraldea banatua izango da;
zu zeu atzerrian, lurralde kutsatuan,

hilko zara,
eta Israel herria erbestera eroango dabe
bere lurraldetik urrun"».
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 19 [18], 8. 9. 10. 11 (R/. 10b)

R/. **Jaunaren erabagiak egiazko,
dan-danak bidezko.**

V/. Jaunaren legea bikain, barrua arnasbarritzen dau;
Jaunaren mandamentua fidagarri,
heldubakoa zuhur egiten dau. R/.

V/. Jaunaren arauak zuzen, bihotzaren pozgarri;
Jaunaren agindua distiratsu, begien argigarri. R/.

V/. Jaunaganako begirunea garbi, iraunkor betiko,
Jaunaren erabagiak egiazko, dan-danak bidezko. R/.

V/. Urrea, urre araztua baino desiragarriago,
eztia, ezti barria baino gozoago. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*2 Ko* 5, 19

R/. **Aleluia.**

V/. Jainkoa ebilen Kristogan mundua beragaz adiskidetzen,

eta geuri emon deusku adiskidetzearen mezua. R/.

## EBANJELIOA

*Jainkoa goresten eben,*
*gizakiei horrenbesteko ahalmena emon eutselako.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 9, 1-8

Aldi haretan, Jesus txalupara igon, itsasoaz bestaldera igaro eta bere herrira etorri zan. Horretan, elbarri bat ekarri eutsoen, esku-ohean etxunda. Jesusek, lagun hareen sinismena ikusirik, esan eutson elbarriari: «Izan bihotz, seme! Parkatuak dituzu pekatuak».

Orduan, lege-maisu batzuek hauxe inoen euren kolkorako: «Biraoka jabilk hau».

Baina Jesusek, hareen gogoetak igarririk, esan eutsen: «Zergaitik dituzue gogoeta gaizto horreek zeuen barruan? Zer da errezago, “parkatuak dituzu pekatuak” esatea ala “jagi eta

zabiltz" esatea? Orain ikusiko dozue, bada, Gizonaren Semeak badaukala mundu honetan pekatuak parkatzeko ahalmena. Orduan, esan eutson elbarriari: "Jagi, hartu esku-ohea eta zoaz etxera!"» Ha jagi eta etxera joan zan.

Hau ikustean, ikaraturik gelditu zan jentea eta Jainkoa goresten eben, gizakiei horrenbesteko ahalmena emon eutselako.

Jaunak esana.

5

# Urtean Zeharreko XIII. barikua

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Maite izan eban Isaakek Rebeka.*
*Honan arindu jakon Isaaki*
*ama galdu izanaren nahigabea.*

Hasiera liburutik

*Has* 23, 1-4. 19; 24, 1-8. 62-67

Sara ehun eta hogeta zazpi urtez bizi izan zan. Kiriat Arban hil zan, Hebronen hain zuzen be, Kanaango lurraldean. Abrahamek dolu eta negar egin eban haregaitik.

Gero, Sararen gorpua egoan lekua itzirik, hititengana joan eta esan eutsen:

«Zuen artean bizi dan etorkina nozue; saldu egidazue lur-arlo bat neure emaztea hobiratzeko». Ondoren, Abrahamek Makpela landako hartzuloan hobiratu eban Sara bere emaztea, Mambreren –hau da, Hebronen– aurrez aurre, Kanaango lurraldean.

Abraham zaharra zan, adinean aurreratua. Jaunak gauza guztietan bedeinkatu eban. Etxeko morroi zaharrenari, eukazan guztien arduradunari, esan eutson: «Ezarri eskua nire izter azpian eta zin egidazu Jaunagaitik, zeru-lurren Jainkoagaitik, ez dozula nire semearentzat emazterik hartuko bizi nazan lurralde honetako kanaandarren alabetatik, ezpada ze, nire sorterrira eta senideengana joango zarala, nire seme Isaakentzat emaztea aukeratzera».

Morroiak itaundu eutson: «Beharbada, emakumeak ez dau lurralde honetara nigaz etorri nahi izango. Orduan, zuk urten zenduan herrialdera eroan behar ete dot zure semea?»

Abrahamek erantzun: «Ez eroan

ezelan be hara nire semea. Zeruko Jainko Jaunak neure aitaren etxetik eta neure jaioterritik atara ninduan eta zin eginez agindu eustan: "Zure ondorengoei emongo deutset lurralde hau". Berak bialduko deutsu aingerua aurretik, handik nire semearentzat emaztea hartu ahal izan dagizun. Eta emakumeak jarraitu nahi ez badeutsu, egin deustazun zinetik aske geldituko zara; baina ez eroan ezelan be hara nire semea».

Handik luzarora, Isaak, Lahai-Roi putzutik etorri eta Negeveko basamortuan bizi zan. Arratsalde baten, landara urten eban ibilaldia egitera eta, begiak jasorik, gameluak etozala ikusi eban. Rebekak be jaso ebazan begiak eta, Isaak ikusirik, gamelutik jatsi eta morroiari itaundu eutson: «Zein da landan zehar bidera datorkigun gizon hori?» Morroiak erantzun: «Nire nagusia». Orduan, Rebekak estalkia hartu eta aurpegia estaldu eban.

Gero, eginiko guztia kontatu eutson morroiak Isaaki. Honek bere ama Sararena izandako oihal-txabolara eroan eban Rebeka; emaztetzat hartu

eta maite izan eban. Honan arindu jakon Isaaki ama galdu izanaren nahigabea.

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 106 [105], 1-2. 3-4a. 4b-5 (R/. 1a)

R/. **Eskerrak Jaunari, ona da-eta.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Eskerrak Jaunari, ona da-eta,
haren maitasuna betikoa da-eta.
Nork azalduko Jaunaren egintza handiak?
Nork goratuko ha behar adina? R/.

V/. Zorionekoak zuzenbidea errespetatzen dabenak,
beti justizia egiten dabenak!
Gogoratu nitaz, Jauna, zeure herriaganako onginahiagaitik. R/.

V/. Zatorkidaz zeure salbazinoaz;
ikusi dagidala zure aukeratuen zoriona,
poztu nadila zure herriaren pozez
eta harrotu zure ondareaz. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Gosea bialduko dot lurrera,*
*ez ogi-gosea, Jaunaren hitza entzutekoa baino.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 8, 4-6. 9-12

Entzun hau zuek, behartsuak zapaldu eta herriko jente apala hondatzen dozuenok. Zeuen barruan dinozue:

«Noiz igaroko ete da ilbarri-jaia, garia saltzeko,
noiz zapatua, garaua salgai ataratzeko?
Neurria txikiagotu eta prezioa handituko dogu,
okerreko pisuak erabiliz;
gari-birrina be saldu egingo dogu.
Jente apala diruz erosiko dogu
eta behartsuak oinetako pare baten truke».

Hau dino Jaunak:

«Egun haretan, eguerdi betean sartuazoko dot eguzkia,
eta egun argitan ilunduko lurra.
Zuen jaiak dolu bihurtuko ditut, zuen abestiak negar-kanta;
dolu-jantziz estalduko zaituet eta zuen buruak soilduko ditut;
seme bakarraren heriotzakoa lako dolua izango da,

eta azkena egun benetan samina».

Hau dino Jainko Jaunak:

«Hara, badatoz egunak:
gosea bialduko dot lurrera, ez ogi-gosea, ez ur-egarria,
Jaunaren hitza entzuteko gose-egarria baino.
Noraezean ibiliko dira, itsasoz itsaso, iparretik sortaldera,
Jaunaren hitzaren bila,
baina ez dabe aurkituko».
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 2 eta 10. 20 eta 30. 40 eta 131 (R/. Mt 4, 4)

R/. **Gizakia ez da ogiz bakarrik bizi,
Jainkoaren ahotik urteten dauan hitz guztitik baino.**

V/. Zorionekoak, haren mandamentuak betez,
haren bila bihotz-bihotzez dabiltzanak.
Bihotz-bihotzez nabil zure bila,
ez itzi ni zure aginduetatik aldentzen. R/.

V/. Lur jota dot barrua,
zure erabagiak eten barik gogo biziz

gura izanez.
Leialtasun-bidea dot aukeratu,
aurrean ditut zure erabagiak. R/.

V/. Hara, zure legeak ditut gurari biziz desiatzen;
bizibarritu nagizu zeure salbazinoaz.
Ahoa zabaltzen dot eta arnasa hartzen,
zure aginduak biziro ditut-eta desiatzen. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 11, 28

R/. **Aleluia.**
V/. Zatoze Nigana nekatu eta lanpetu guztiok,
eta Neuk arinduko zaituet, dino Jaunak.
R/.

## EBANJELIOA

*Ez dabe osasundunek behar osagilea.*
*Nahiago dot errukia sakrifizioak baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 9, 9-13

Aldi haretan, Jesusek, bidez joiala, Mateo eritxon gizon bat ikusi eban zergak batzeko mahaian jesarririk, eta esan eutson: «Jarraitu Niri». Mateok

zutundu eta jarraitu egin eutson.

Geroago, Jesus mahaian egoan Mateoren etxean; beste zergalari eta pekatari asko be etorri eta mahaian jesarri ziran Jesusegaz eta honen ikasleakaz. Fariseuek, hori ikustean, esan eutsien ikasleei: «Zelan jaten dau zuen Maisuak zergalariakaz eta pekatariakaz?»

Hori entzutean, Jesusek esan eutsen: «Ez dabe osasundunek sendagile beharrik, gaixoek baino. Hoba zeunkie Jainkoak esandako honetaz jaubetuko bazinie: "Nahiago dot errukia sakrifizioak baino". Ez naz zintzoei dei egitera etorri, pekatariei baino».

Jaunak esana.

________________________________6

## Urtean Zeharreko XIII. zapatua I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jakobek bere anaiari lehen-semetza kendu eta haren dedeinkazinoa jaso.*

Hasiera liburutik

*Has* 27, 1-5. 15-29

Isaak zahar egin zan eta ezer ez ikusteraino ahuldu jakon ikusmena.

Egun baten, Esau bere seme zaharrenari deitu eutson: «Seme!» Harek erantzun: «Hemen nozu». Isaakek, orduan: «Begira, ni zahar egin naz eta une batetik bestera hil naiteke. Hartu egizuz ehizarako iskiluak, geziak eta uztaia, zoaz basora eta harrapatu egizu piztiaren bat. Ondoren, prestatu egidazu nik gogoko dodan janari goxoa eta ekarri, jan dagidan; gero neure bedeinkazinoa emongo deutsut, hil baino lehen».

Entzun eban Rebekak Isaakek bere seme Esauri esandakoa. Joan zan, beraz, Esau basora, aitari eskeintzeko ehiza bila.

Rebekak etxean eukazan Esau bere seme zaharrenaren soinekorik ederrenak hartu eta Jakob bere seme gazteenari jantzi eutsozan, eta antxume-narruz estaldu eutsozan eskuak eta lepo leuna. Eta prestatutako janari goxoa eta ogia bere seme Jakoben eskuetan jarri ebazan.

Sartu zan Jakob aitaren gelan eta esan eutson: «Aita!» Eta honek erantzun: «Zer? Zein zara zu, seme?» Jakobek aitari: «Esau nozu, zeure seme

zaharrena. Egin dot zuk agindua. Jagi zaitez, jesarri eta jan nire ehiza, bedeinkatu nagizun». Isaakek esan eutson semeari: «Bai azkar aurkitu dozula, seme». Jakobek erantzun: «Jaunak, zure Jainkoak, eskura jarri deust».

Isaakek, orduan: «Zatoz hurrago, seme, ikutu zagidazan, benetan nire seme Esau zaran ala ez jakiteko». Hurreratu jakon Jakob bere aita Isaaki, eta honek ikutu eta esan eban: «Ahotsa Jakobena da, baina eskuak Esaurenak». Ez eban ezagutu, eskuak uletsuak eukazalako, anaia Esauk lez, eta bedeinkatu egin eban. Isaakek itaundu eutson: «Benetan, nire seme Esau zara?» «Bai, Esau naz», erantzun eutson Jakobek.

Gero, Isaakek: «Emoidazu jaten ehizakia, seme, eta bedeinkatuko zaitut». Jakobek emon eta harek jan egin eban; ekarri eutson ardaoa, eta harek edan. Ondoren, Isaak bere aitak esan eutson: «Zatoz, seme, eta emoidazu musu». Hurreratu jakon semea eta musu emon eutson. Aitak, jantzien usain gozoa barruntau

ebanean, bedeinkatu egin eban, esanez:

«Nire semearen usaina,
Jaunak bedeinkatutako zelaiaren usaina.
Jaunak emon deizula
zeruko iruntza eta lurreko guritasuna,
ogi-ardaotan oparotasuna.
Izan dagizuzala herriak zerbitzari,
makurtu daitezala nazinoak zure aurrean.
Izan zaitez zeure senideen nagusi,
makurtu daitezala zure aurrean zure amaren semeak.
Madarikatua, zu madarikatzen zaituana;
bedeinkatua, zu bedeinkatzen zaituana».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 135 [134], 1-2. 3-4. 5-6 (R/. 3a)

R/. **Goratu egizue Jauna, ona da-eta.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu egizue Jaunaren izena,
goratu egizue, Jaunaren zerbitzariok,
Jaunaren tenpluan,
gure Jainkoaren etxeko atarietan

zagozenok. R/.

V/. Goratu egizue Jauna, ona da-eta,
kanta haren izenari, gozoa da-eta.
Jakoben herria aukeratu dau Jaunak beretzat,
Israel, bere jaubetza berezitzat. R/.

V/. Badakit nik handi dala Jauna,
jainko guztien aldean handi gure Jauna.
Nahi dauan guztia egiten dau Jaunak.
zeruan eta lurrean, itsasoan eta ozeanoetan. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Nire herri Israelen zoria aldatuko dot*
*eta euren lurraldean landatuko ditut.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 9, 11-15

Honan berba egiten dau Jaunak:
«Egun haretan, jasoko dot Daviden txabola jausia:
horma arrakalduak beteko deutsadaz eta lurreratuak jasoko;
antxinako egunetan lez berregingo dot.
Eta israeldarrak barriro jaubetuko dira
Edomgo lurraldetik geratzen danaz
eta nireak izan ziran nazino guztiez
–halan dino hori egingo dauan

Jaunak–».

Hau dino Jaunak:

«Badatoz egunak,
eta hazia erein orduko, uzta batzeko sasoia izango da,
mahatsa zapaldu orduko, barriro ereiteko sasoia;
mendiek eta muinoek ardao barria isuriko dabe.
Nire herri Israelen zoria aldatuko dot:
uri hondatuak jasoko dabez eta hareetan biziko dira,
mahastiak jarriko dabez eta hareetako ardaoa edango;
baratzeak landatuko dabez eta hareetako frutuak jango.
Euren lurraldean landatuko ditut,
eta Nik emondako lurretik ez dabez barriro atarako
–halan dino zure Jainko Jaunak–».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 85 [84], 9. 11-12. 13-14 (R/. ik. 9b)

R/. **Jaunak bakea agintzen deutso bere herriari.**

V/. Entzungo dot Jainkoak dinoana:
Jaunak bakea agintzen deutse bere herriari eta fededunei,
barriro konfiantza agertzen deutsoenei. R/.

V/. Maitasunak eta leialtasunak alkar dabe aurkitzen,
justiziak eta bakeak alkar besarkatzen.
Leialtasuna lurretik da ernetzen,
justizia zerutik jaisten. R/.

V/. Jaunak emongo dau euria,
eta gure lurrak ekarriko bere uzta.
Haren aurretik joango da justizia,
haren pausuei jarraituko deutse ondoizateak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 10, 27

R/. **Aleluia.**

V/. Nire ardiek entzuten dabe nire ahotsa, dino Jaunak;
Nik ezagutzen ditut,
eta hareek jarraitu egiten deuste. R/.

## EBANJELIOA

*Ezteguetara deituak egon ete daitekez triste,*
*senar barria eurekin dabela?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 9, 14-17

Aldi haretan, Joan Bataiatzailearen ikasleak Jesusengana hurreratu eta esan eutsoen: «Zergaitik guk eta fariseuek egiten dogu barau sarritan, eta zure ikasleek ez?»

Jesusek erantzun eutsen: «Ezteguetara deituak egon ete leitekez triste senar barria eurakaz dan bitartean? Etorriko jake senar barria kenduko deutsien eguna; orduan, bai, egingo dabe barau».

Inork ez deutso jantzi zaharrari oihal gordinezko adaburik josten ze, jantzia behartu egingo leuke adabuak, eta tarratada handiagoa egingo. Ez da sartzen ardao barririk be zahagi zaharretan; osterantzean, zahagiak lehertu egingo litzatekez, eta ardaoa isuri eta zahagiak hondatu. Ardao barria zahagi barrietan sartzen da, eta horretara biek irauten dabe».

Jaunak esana.